euskal pen kluba
2018 Udazkena

PEN International



# Basque Writing 17

# Literatura eta Kartzela



Ez dira gutxi kartzelan idatzi duten idazleak, idazteagatik kartzelaratutakoak edo behin kartzelan egonik idazle bihurtu direnak. **Ken Saro Wiwa** idazle nigeriarrak, Literatura Nobel Sarirako hautagaiak, kartzela ezagutu zuen urkatua izan aurretik Ogoni herriaren defentsa baketsua egiteagatik.

Historian zehar kartzelan idatzi dute **Tomas Morok** teologo britaniarrak eta **Miguel de Cervantes** idazle espainiarrak. **Donatien Alphonse-François de Sade** markesak, lan askoren egileak, 27 urte eman zituen kartzela eta zoroetxeetan. **Voltaire** sarritan egon zen kartzelan, eta lehenengo aldian espetxeratu zuten satira batzuk idazteagatik Orleansgo Dukearen aurka.

**Oscar Wilde** idazle frantziarrak lizunkeriaz salatuta kartzelaratu zuten, bere maitalearen aita difamazioagatik salatu ondoren. **Paul Verlaine** eta Arthur Rimbaud poeta frantsesak ere maitaleak ziren. Verlainek tiro egin zion Rimbaud-i eta kartzelara eraman zuten. **Aleksandr Solzhenitsyn** idazle errusiarrak eta Literatura Nobel saridunak, zortzi urtez egin zituen derrigorturiko lanak eta ostean erbesteratu zuten behin betiko.

Aldizkari honetan hurbilketa egin nahi izan dugu errealitate horretara. ***Ataramiñe*** aldizkariak 16 urte daramatza kartzelan idatzitako literatura argitaratzen. **Joseba Sarrionandia** idazle euskaldunak ia 40 urtez idatzi du espetxean eta erbestean. Espetxeetan egon ohi den liburuen debekua azaldu digute **Iñaki Soto** eta **Xabier Izaga** kazetariek eta **Jokin Urain** idazlea, preso egondako urteetan hainbat liburuen egilea, bere eskamentutik mintzatu da.



**Laura Mintegi**
*Basque PEN*



# Ataramiñe

## kartzelan egindako literaturaren aldizkaria

***Ataramiñe*** Amnistiaren Aldeko Mugimenduaren baitan sortu zen 2002. urtean. Planteatu zen presoen idatziak argitaratzeko talde finko bat eratzea, antolakundearen barruan kudeatzea, alegia.




***Ataramiñe*** ("*atera mingaina*") da funtzionarioek presoei esaten dioten esaldia ahoan zerbait ezkutatzen ote duten ikusteko.

Historikoki, presoen lanak modu naturalean argitaratu izan dira Euskal Herriko argitaletxeetan, eta Amnistiaren Aldeko Mugimenduak ere, antolakundearen publikazioekin batera, presoek idatzitako libururen bat edo beste ere argitaratu izan ditu, oso irizpide argirik gabe argitaratu ere.

Hartara, talde bat eratu zen, eta taldean bideratutako hausnarketan definituko ziren proiektuaren parametroak.

Proiektuaren helburua presoen artean literatura sustatzea izango zen, sakabanaketaren barruan literatura harreman sare bat antolatu eta kalearekin loturak egitea, norabide bietan.

Ahozko eta idatzizko komunikazioak zentsuratuak dituzte. "*Funtzionarioak paper bila dabiltza zeldetan*".

Lehenengo ideia izan zen urtekari bat argitaratzea, liburu formatuan, euskal preso politikoen lanen bilduma moduko literatura koaderno bat. ***Ataramiñe*** izena jarri genion, eta horrek eman zion izena proiektuari, minaren adiera biekin jolastuz, ba-rruko minak bideratzeko ariketarekin eta mingaina era-kustearekin, alegia.

2002an argitaratu genuen lehen bilduma, eta urtezurteko alearekin iritsi gara 2018. urtera. Genero guztietako lanak biltzen dira bertan, beti ere neurri laburrean, idatzi eta irudietan.

Liburuak ere argitaratu ditugu urte hauetan, 35 guztira. Denetatik aurkituko dugu presoek egindako lan horien artean: nobelak, narrazioak, saiakerak, kronikak, poemak, bertsoak, margoak, komikiak, haurrentzako liburuak, itzulpenak... Liburuak, musika CDak, mahai-joko bat ere bai, eta paperean izan ezik ePub formatuan ere zabaldu ditugu liburuak.

***Proiektuaren helburua da sakabanaketaren barruan sare bat antolatu eta kalearekin loturak egitea, norabide bietan.***

Dena dela, gogoratu behar da gure asmoa ez dela euskal preso politikoek kartzelan egiten dituzten lan guztiak geuk argitaratzea. ***Ataramiñe*** sortu zenetik hona, presoek idatzi edota itzulitako beste 40 bat liburu ere argitaratu dira. ***Ataramiñe***n nahiago izaten dugu presoen lanak bestelako argitaletxeetan argitara ematea, batetik, presoa gizartean pertsona normal bezala dagokion eremuan agertzeagatik, eta, bestetik, lanaren beraren onerako ere bai: argitaletxeek egitura finkoa dute liburua zabaltzeko, katalogoa, dendetan mantentzen da... eta, guk ez bezala, egileari dagozkion eskubideen ordaina ere ematen diete argitaletxeek.





Hartara, preso batek egindako lan bat eskuratzen dugunean, baloratu eta argitaletxe batekin jartzen gara harremanetan, beraien artean bidera dezaten lana, gainerako egileekin egin ohi duten bezala. Hala ere, badira dena delako arrazoiengatik, argitaratu gabe geldituko liratekeen lanak; badira beraien lanak berez ***Ataramiñe***n kaleratu nahi dituzten presoak. Horiexek argitaratzen ditugu guk, eta, esan behar dugu, oso liburu eder eta gogoangarriak argitaratuak ditugula ***Ataramiñe***n.

Idazteagatik kartzela urte luzeak egin dituzten presoak izan ditugula espetxeetan, Egin-eko kazetariak kasu.

Baina, esango duzu, ez diezue presoei egile eskubiderik ordaintzen? Ba, ez; ez diegu ordaintzen. Horrelakoak gara. Gainera liburu guztiak *Copyleft* lizentzia librean argitaratzen ditugu. Proiektu honetan gabiltzanok dirurik behintzat ez dugu jasotzen egiten dugunaren ordainez. Lan kolektiboa da: presoek idatzi, beraien lagun eta senideak lanak kartzelatik atera, batzuetan modu sinesgaitzetan atera ere, guri helarazi, testuak digitalizatu, idazleak ibiltzen dira presoekin harremanetan lanak editatzen, kantariek haiek idatzitakoari musika eta ahotsa ipintzen, argitaletxeak ere inplikatzen dira proiektuan, liburuak auzolanean muntatu izan ditugu, presoen aldeko taldekoek banatzen dituzte liburuak, azokan izaten dira, herritarrek, elkarteek antolatzen dituzte espetxea eta literaturaz gaineko errezitaldiak, kantaldiak, hitzaldiak...




Bestela ere, gogorarazi behar dugu idazteagatik kartzela urte luzeak egin dituzten presoak izan ditugula espetxeetan, *Egin*eko kazetariak kasu. Gogorarazi behar dugu idazteagatik zigortu egiten dituztela presoak, askotan kartzelako zigorrak ezarriz, eta espetxe zigorrak ere sartu izan dizkiete presoei argitaratu dutenarengatik, Iñaki de Juanari ezarritako kondenak bezala. Ahozko eta idatzizko komunikazioak kontrolatuak eta zentsuratuak dituzte. ***Funtzionarioak paper bila dabiltza zeldetan.*** Literatura lanak kalera ateratzeak bestelako lanak ere ematen ditu askotan, preso politikoen idatziak zaindarien gustukoak izaten ez direlako, espetxea sistema errepresiboaren tresna delako, eta erre-presio sistema horren barruan, literatura... bizi-tzeko baliabidea delako presoarentzat. "***Isolamenduan ezerezean sortzen du bizitza presoak*"**, idatzi zuen euskal preso politiko batek, emakumea bera, isolamenduko bizitzaz zihardauen bakarrizketan. Ezerezean sortzen du presoak bizitza isolamenduan. Ez ezerezetik, ordea. Bere baitan daraman mundutik sortzen du presoak bizitza, goizaldean esnatu eta aurrean duen eguna burruka bat denean.

*"Isolamenduan ezerezean sortzen du bizitza presoak", idatzi zuen euskal preso politiko batek.*

Arnasa hartu, ariketak egin, idatzi... ez dago bizitza sortzeko baliabide handirik espetxeko isolamenduan. Eta asko idazten da kartzelan, idazten den gehiena inon argitaratzeko asmorik gabe egiten bada ere. Ikuspuntu horretan jartzen saiatzen gara espetxea eta literaturaz aritzen garenean, espetxean idatzitako literaturaz, kartzelan idazten duenaren ikuspegian.

Presoek idatzitakoak kaleratu egiten ditugu, horretan gabiltza, beti kartzelan bizitzea zer den galderarekin bueltaka.



**Mitxel Sarasketa**



# Kartzelan eta Erbestean idaztea: Joseba Sarrionandia

**Joseba Sarrionandia (1958)** da euskal idazlerik onenetarikoa eta enblematikoena. Olerki eta narrazio laburren hainbat liburu idatzi ditu, baita eleberri batzuk ere, ia denak kartzelan ala erbestean. 1985ean kartzelatik ihes egin zuen, eta ordutik aurrera **31 urtez ezkutuan** bizi izan zen. Erbestetik idazten eta zabaltzen zituen bere lanak, izenik gabeko ezlekuetatik, eta kartzelatik alde egin baino hilabete lehenagoko zuri-beltzeko argazki bat izan zen haren irudi identifikagarri bakanetakoa. 2016an Etxepare Euskal Institutuak Habanako Unibertsitatean (Kuba) euskal irakurle izendatu zuen Sarrionandia, eta orduantxe jakin zen Habanan bizi dela duela urte batzuetatik. Handik egun gutxira, 31 urtean lehen aldiz, haren argazki eguneratu bat argitaratu zen.



*...et je n'entendrai plus*
*les verrous se fermer sur*
*l'éternel reclus*
**Alfred de Vigny**

Jakin nahi nuke nork betetzen duen orain
nik utzitako zelda.

Ea endelegatzen duen hormako izkribu tipia:
'Eroria burrukara'.

Ea alboko zeldatik inork hots egiten dion
komuneko plastikozko tuberia soltatuz
telefonoz bezala mintzatzeko.

Ea hango egunak eternal dirauen, gauak izotzezko,
egunsentiak esne garratza diren.

Ea errekuentoan mirillatik so egiten duen begiak /
surveillir et punir /
inor ikusten duen edo jadanik inor ez /
denak ala inor ez.

Jakin nahi nuke ihes egin genuenok
benetan ihes egin genuen

ala ihes egitearena bizitzen irauteko
aitzakia hutsa izan zen.

***Aspaldian utzitako zelda, 1992***

"Bada, urte betean, 1980. urtean zehar, eginikako poemek osotzen dute. Irailan eta urrian idatzi nuen gehiena, baina urte guzian zehar bildurikako ohar eta gogoetez. Niretzat berezi samarra izan da 1980 urte hau: hogeita bi urte egin ditut, eta inoiz baino askeago senditu izan dut ene burua hazilaren hamairuan -aurkezten ari naizen poema bilduma hau osotu berri nuela- gartzelara, dirudienez luzarorako, sartu nauten arte".

***Izuen gordelekuetan barrena, 1981***

"1981eko uztailaren 22an eraman gintuzten Puerto de Santa Mariako gartzela berrira, presondegi moderno eta izugarri batetara. 25aren arratsean eta 26aren goizean, berriz, gutarik hogeiren bat eraman gintuzten zigor zeldetara, luzarorako. Jantziriko erropa, liburu bakarren bat, besterik ez genuen aldean. Intxaur azal baten barruan delako narrazioa zelda zigor haietako lehen hamabi orduren kronika moduko bat da, kontrapuntuz pertsona baten orduko bizitza azaltzen delarik. Egun batzu geroxeago zigor zeldetan bertan idatzi zen, paper puskatan, eta ordutik hona iraun du, zati batzu katxeotan galdu arren, orain ia osorik agertzeko eran."

***Intxaur azal baten barruan eta Eguberi Amarauna, 1983***



Angel Martinez komisarioak bere errebolberraren
kainoia
detenitu biluziaren uzkira sartu eta mirila zikindua,
odoldua, patetikoa ateratzen duenean
zer axola zaio mutil torturatuari poeta
*um fingidor* den?
*G.K. Chesterton*ek La Salve bisitatu ote du
inoiz?
Intxaurrondoko kalabozoetan nork ezagutzen du
*Hermann Broch?*
Zelan adieraziko du gero mutil torturatuak
epailearen aurrera suntsiturik iristean
*objetive correlative* kontzeptuaren esanahi
zehatza?
Zer da *Molly Bloom*entzat Carabanchelgo egunsenti
jostorratzez betea?

Nor da *Michel Foucault* zigor zeldetan hamar hilabetez
higatzen denarentzat?
Bost minutuko bisita bat? Enkontru lirikoa?
Euskal presoek
*Jean Duvoisin*en Biblia estudiatu behar dute
beren gutun debekatuetan
*hatxeak* eta *komak* leku egokian jartzeko?
Zein da literaturarentzat
errebeldiaren, iraultzaren, abenturaren
balio etiko ahortezina?
Zer izkiriatzen da *Voprosi Literaturi* edo *Tel Quel*
aldizkarien ertzean
euskal presoen gose greba amaigabeez?
Zer axola zaio *konpromezua*
polizien tiro artetik —erreboluzioaren bandera lez
ezkutarik gabe— ihes doan mutilari...

***Literatura eta Iraultza, 1987***

Igual hasieran bertan ekibokatu ginen,
mundura euskaldun sortzean.
Gero ez genuen independentzia eta iraultzaren
borrokatik apartatzen jakin.
Eman dezagun: esna kantu bat abestu genion
gure aberriaren sehaska hutsari.
Eta goiz batez El Puerto de Santa Maríako
kartzelan esnatu ginen.

Zorionez edo zorigaitzez, anitz euskaldun
ekibokatu ekarri gintuzten
Espainiako azken ipurdi honetan bizi edo
hiltzera.
Bizi, ozta-ozta gainbizi gara, estu,
larri, ia miraríz.
Eta bizitza ez da guretzat lehen zen bezalakoa
harrezkero egundo izango.

Begirale uniformatuek ehortziko gaituzte
zulorik urrun eta ilunenean,
idazkari ordainduek borratuko dituzte
gure urratsak.
Baina ekibokatuaren ohitura eta
ausardiarekin
zin egin dezakegu: maite genituen gauzengatik
erori ginen preso,
baina gure maitasuna oraindik
ez dago preso.

***Hemen gaude eta jarraitzeko asmoarekin, 1992***

*Poemen aukeraketa:*
**Eider Rodriguez**



Preso egon denaren gogoa
kartzelara itzultzen da beti.
Kalean juje, fiskal eta
abokatuekin gurutzatzen da,
eta poliziek, identifikatu ez arren,
beste inori baino gehiago
begiratzen diote, haren pausoa
sosegatua ez delako
edo sosegatuegia delako.
Haren bihotz barruan
betirako kondenatu bat dago.

***Preso egon denaren gogoa, 1992***

Lau, bost, sei harresi gure inguruan
bihotz bat bestearen barruan bezala.
Euriak zorionari eragindako kantua
laku zaharren batean ito zen,
haizeak ez dakar ezer. Begiratu hegaztien
itzal atzeman ezinak lurrean.
Zer egin dezakegu? Paseatu, urrats
bakoitzean errauts apur bat utziz;
mundua ere geure antzera biratzen da
bere buruaren giltza aurkitu ezinik.

***Lau bost sei harresi, 1992***



# Liburuak debekatuta!!




Ez da arraroa kartzelako agintariak liburuak zentsuratzea presoentzat kaltegarria direlako aitzakiaz. Guantanamon gertatu da, besteak beste. Liburuak debekatzen dira eta zeldan ale batzuk edukitzea pribilegiotzat hartzen da. Ingalaterran ere kartzeletan liburuak debekatzeko erabakia hartu zen 2014an, eta erabakiak bazterrak harrotu zituen gizarte britaniarrean. Idazle eta gizarte eragile askoren kexa sorrarazi zuen.

Dostoievski-k zioen gizarte baten zibilizazio maila epaitu daitekeela beraren kartzeletara sartuz gero. Ingalaterrak eman zuen bere zibilizazio mailaren neurria kartzeletara liburururik sartuko ez zirela arautu zuenean.

Munduko edozein lurraldetan espetxeko administrazioa arbitrarioa izaten da, absurdoak diren erabakiak hartzeraino. Absurduak izanagatik ere, preso daudenentzat erabaki kaltegarriak izaten dira. Mendebaldeko herrialdetako legeetan hitz onak badaude ere, kartzeletako errealitatea ilun eta ankerra izaten da, eta barruko egoera gordina nekez heltzen da harresietatik kanpora.

**Liburuak pribilegiotzat hartu ziren** eta ez zen aintzat hartu bergizarteratzean eduki dezakeen balioa, *Independent Voices*-eko Memphis Barker editore eta idazleak salatu zuen bezala.

**Chris Grayling** Justizia idazkariak saihestu nahi izan zuen erreinzidentzia eta neurri batzuk hartu zituen helburua lortzeko. Batetik, aldaketak sartu zituen baldintzapeko askatasunaren sisteman, eta murrizketak ezarri zituen. Bestetik, zaildu zuen presoak liburuak eskuratzeko bidea, eta zigorrak areagotzeko, murriztu zuen pelikulak ikustea eta gimnasiora joatea jarduera fisikoak egi-teko.

Justizia Ministerioko bozeramaile batek iragarri zuen debekuaren arrazoia zela indartzea pizgarrien sistema, portaera ona saritu egiten zuen sistema, eta liburuak, nahi izatekotan, kartzelako liburutegian erabili zitezkeela.

Gaiaren inguruan egin diren ikerketek, ordea, agerian uzten dute kartzelako baldintzak gogortzeak ez duela erreinzidentzia murrizten eta, gainera, gazteen delinkuentziaren arrazoia izaten dela "garapen moral eta kognitiboaren eza", eta ez oportunismoa. Eta ezaguna da arteek (literaturak barne) lagundu egiten dutela garapen intelektualean.

Kartzeletako arazo handiena ez da, noski, liburuak onartu ala debekatu egiten diren. Arazoen jatorria askoz ere sakonagoa izaten da: presoen metaketa, jarduera falta, eta buru osasuna zaintzeko baliabide eza, besteak beste. Arazo hauei aurre egitea nekosoa eta garestia bada ere, ez da lagungarria arazoei beste oztopo bat gehitzea, presoei irakurketaren onurak ukatuta.



**Espainiako kartzeletan ere debekua arau izan da** zenbait presoren kasuetan, eta liburuak bereziki debekatu dira. Arauaren helburua ez zen seguritatea, presoaren hondamena baizik. Zigortu egiten zen dutxetan abestea, besoak erakustea, txistua jotzea, eta ziegan irratia, tabakoa eta liburuak edukitzea.



Terrorismo delitupean zigortuta egon zirenek (eta borroka armatua erabili zutenez gain, terroristak ziren kazetariak, gizarte ekintzaileak eta presoekiko solidario ziren lagun eta senideak) ikusi izan dute nola ezin zuten eduki zeldan bi liburu baino gehiago aldi berean. Hiztegia edukiz gero, orduan liburu bakarra eduki zezakeen. Eta ikasketa arautuak eginez gero, irakasgai bakarraren liburua gorde zezaketen. Eta liburu hura amaitutakoan orduan eskatu zezaketen hurrengo irakasgaiaren liburua, baina inoiz ez bi liburu baino gehiago.

Debeku hauei aurre egiteko borroka luze eta gogorrak egin zituzten presoek, zigor latzak eta auziperatze ugari pairatu zituzten, azkenean debekatu ankerra altxatzea lortu zen arte.

**Liburu kopurua mugatzeak huskeria eman lezake**. Giltzapean denak, ordea, ondo asko daki liburu bat denbora-pasa baino askoz gehiago dela, eta euskal presoen artean irakurtzea ohiko jarduera da.





Liburua leiho bat da, munduari, beste mundu batzuei heltzeko modua. Diskurtsoak diskurtso, kartzelak antzinako funtzio zigortzailea du, mundutik kanpo ezartzeko lekua da. Kartzela ez-lekua. Eta "ez dagoena" munduari azkazalez heltzen saiatzen da, egon nahi du. Imajina dezagun leiho hori kentzea zer den, eta porlana besterik ez izatea.

Kartzelak presoaren hondamen fisiko eta psikikoa du xede, eta kirola edo ariketa fisikoa bezala, irakurtzea jardun ezin garrantzitsuagoa da. Irakurketak gogoa piztu eta zabaldu egiten du, eta motibazioa areagotzen du.

Esanguratsua da, izan ere, kartzeletan liburuak debekatzea, debekatzailearen izaeraren berri ematen baitu. Esanguratsua da, liburua presoen pribilegio gisa aurkeztea.

**Iñaki Soto** eta **Xabier Izaga**
kazetarien testuetan oinarrituta



# Kartzelan idatzi:

## preso ohiaren testigantza

*"Soinak ezin duenean ere, soina ez dabilenean ere, irudimena badabil eta bizi da;* ***hemengo bizitzatik haragoko lurraldeak eta denborak ikus eta bizi ditzake gure irudimenak",*** esan zidan behin preso batek. Ez dakit pretentsio poetikorik ote zuen gogoeta hori egitean, baina egia da bere eskumenetik eta eguneroko bizitzatik urrun duela presoak bere ingurune naturala, eta irudimena du zernahitarako tresna. Preso dagoenak irudimenaren lizentzia du, beste guztia debekatua eta katez lotua duenean ere. Eta irudimenak, bidaide zoragarri horrek, errealitatetik harago eramanez sufrimendua arindu diezazuke izorratuta zaudenean.

Espetxean zergatik idazten den galdetu izan didate behin baino gehiagotan, eta aldi bakoitzean erantzun ezberdina eman dut agian, eta hala ere ez dut asmatu arrazoi definitiboa azaltzen, baina ez dut horregatik gezurrik esan, egiak ugari izan daitezkeelako.

Espetxea ez da gizakiarentzat bizileku naturala, bortxaz ezartzen zaion gunea da; **gizakiak egon nahi ez duen lekua da kartzela, eta egon nahi lukeen lekuarekin amets eginez bizi da** presoa hormen artean dagoen bitartean. Galdu duen edo kendu dioten munduan egon nahi du, eta irudimena du horretarako lehen komunikabidea, berdin dio irudimenean darabilena erreala ala irreala den. Bere bakardadeko gau eta egun luzeetan irudimena, fantasia nahi bada, baliatzen du presoak beste errealitate batekin komunikatu eta han bizitzeko.

Ez dakit noiz, non, nola eta zer arrazoirengatik gizakiaren historian lehen aldiz gizaki haietako batek preso hartu zuen beste gizaki bat. Baina pentsatu nahi dut historiako lehen preso hark ere, guztia galduta, ezer gabe, etsipenaren zuloaren ertzean agian, amets egin zuela beldurraren eta buruhausteen gainetik. Eta beharbada memorian gorde zituen espetxealdi hura bizitzen zuen bitartean irudikatutako ihes zoragarriak, maitasun historia hunkigarri edo agian tragikoak... Zer ez ote zuen irudikatu gizakiaren historiako lehen preso hark!

Eta zer ez ote dute irudikatu, amestu, pentsatu... munduko edozein lekutako espetxeetan merezitako edo merezi gabeko zigorra ordaindu duten milaka eta milioika gizakik beren bakardade gorrian! Eta **irudimenak ematen badizu, edo errealitatean ikusten baduzu, zergatik ez kontatu?**

Noizbait preso egon diren batzuek espresuki literatura idatzi dute espetxean: poesia, saiakera, nobela... Baina beste askok, noizbait preso egon den orok esango nuke, literatura egiteko pretentsiorik gabe ere idatzi du, eskutitzak batez ere. Bere inguru afektiboarekin harremana ezinbestekoa zaiolako eta hori mantendu behar duelako, edo ingurune afektibo berriak bilatzeko, **eskutitza bitartekorik erabiliena da espetxean eta presoen historian**. Epistola generoak edonori ematen dio lizentzia, letratu gabeak ere erabili dezake idazten dakienen bati diktatuz... Zer modu ederragorik historia bat osatzeko!

Behin, espetxean, preso batek jaso du emaztearen eskutitza, baina ez daki ez idazten ez irakurtzen, eta dakien beste preso bati eman dio, irakur diezaion. Baina eskutitza jaso duenak ez du nahi irakurriko dion horrek bere emazteak kontatzen dionaren berri –bien arteko maitasun kontuak eta intimitateak agian, edo etxeko gauzak– jakin dezan. Emaztearen eskutitza ematen dio, bada, irakur diezaiola eskatuz. *"Baina belarriak estali aurrena, nire emazteak dioena nik bakarrik entzuteko da-eta"*– esaten dio besteari, irakurtzen hastera doanean.

Ez da anekdota bat baizik, baina anekdota erreala da, espetxeko bizitza bezalakoa. **Espetxeetan egunero idazten dira eskutitzak,** eta egunero jasotzen dira. Eskutitzak idaztea izan zen nire kasuan ere espetxeko idazketaren hasiera, nire ingurune afektiboarekin komunikatu beharra nuelako. Eta, idazten hasita, idazkera hori ahalik eta dotoreen izan dadin saiatzen zara, eta forma poetikoen bila ere saiatzen zara gero, maiteminduta bazaude esate baterako, edo drama egingo duzu haserratu zaituenari zuzenduz...

Idaztea ariketa naturala ez ezik ezinbestekoa da espetxean; zure ingurune afektiboarekin harremana ez galtzeko, espetxeko administrazioarekin eskaerak egiteko, epailearengana jotzeko, zure egoera azaltzeko... idatziz egin behar duzu batik bat.



Baina zeure buruarekin aritzeko ere, **espetxearen logikarik eza zeure buruari azaltzeko ere bitarteko ona da idazketa**, eta horixe da batez ere ni idaztera bultzatu ninduen arrazoi nagusia. Hortik aurrera, konstantziak, gai ezberdinak tratatu nahiak, fikzioaren bitartez errealitatea azaldu nahiak eta sorkuntzak suposatzen duen abenturak zaramatza literaturaren forma ezberdinetan jarraitzera.

**Jokin Urain idazlea**

Koordinazioa, Diseinua
eta Maketazioa: L. Mintegi

pen@euskalpen.eus
www.euskalpen.eus

euskalpenkluba

BASQUE PEN
Agoitz Plaza, 1.
48015 Bilbao-Bizkaia
Euskal Herria- Basque Country

Babeslea: etxepare EUSKAL INSTITUTUA INSTITUTO VASCO BASQUE INSTITUTE